**2009ko martxoaren 15a**
**Garizumako 3. Igandea (B)**

**Joan 2,13-25**




Hurbil zen juduen Pazko Jaia, eta Jerusalemera joan zen Jesus. Tenpluan merkatariak aurkitu zituen idi, ardi eta usoak saltzen, eta diru trukalariak ere bai, han eserita. Jesusek, lokarriz zartailu bat eginez, tenplutik kanpora bota zituen denak, bai eta ardiak eta idiak ere; eta trukalarien diruak sakabanatu eta mahaiak irauli egin zituen. Uso saltzaileei esan zien: "Kendu hemendik hau guztia. Ez egin nire Aitaren etxea merkatu etxe".
Ikasleei, Liburu Santuak dioena etorri zitzaien gogora: Zure tenpluaren maiteminak erreko nau.
Orduan, galdetu zioten judu agintariek: Zer seinale ematen diguzu hori egiteko aginpidea duzula frogatzeko?
Jesusek erantzun zien: Desegizue tenplu hau eta hiru egunetan berreraikiko dut.
Juduek ihardetsi zioten: Berrogeita sei urte* behar izan dira tenplu hau eraikitzeko, eta zuk hiru egunetan berreraikiko duzula?
Hura, ordea, bere gorputzaren tenpluaz ari zen. Horregatik, hilen artetik piztu zenean, esandako hori gogoratu zitzaien haren ikasleei, eta sinetsi egin zuten Liburu Santuko eta Jesusek esandako hitza.
Pazko Jaian Jesus Jerusalemen zegoela, askok sinetsi zuten harengan, egiten zituen mirarizko seinaleak ikusirik. Baina, Jesus bera ez zen fidatzen haietaz, guztiak ezagutzen baitzituen, eta ez zuen inoren aitorpen beharrik, ongi ezagutzen baitzuen berak gizakiaren baitan dagoena.

---

## TENPLU BERRIA

*Egilea:* ***Jose Antonio Pagola***
*Itzultzailea: Dionisio Amundarain*

Lau ebanjelariek dakarte Jesusen keinu probokatzaile hau: «animalia-saltzaileak» eta «diru-trukatzaileak» tenplutik botatzearen keinua. Ezin du jasan bere Aitaren etxea kultutik bizi den jendez betea. Jainkoa ezin erosia da «oparien» bidez.

Joanek, ordea, lau ebanjelarietarik azkenak, Jesusen eta juduen arteko elkarrizketa dakar, zeinetan Jesusek era handiosean baieztatzen baitu, tenplua suntsitua izango delarik, «hiru egunean eraikiko duela berak». Inork ez du ulertu zen esan nahi duen. Horregatik gehitu du ebanjelariak: «Bere gorputzaren tenpluaz mintzo da Jesus».

Har dezagun kontuan, ezen Jerusalemgo tenpluak hogei edo hogeita hamar urte lurrean harri-pila eginik zeramanean ari dela idazten Joan ebanjelaria. Judu askok umezurtz dakusate beren burua. Tenplua zuten beren erlijioaren bihotza. Nola bizi Jainkoa beren herrian izan gabe?, pentsatzen zuten.

Ebanjelariak jabearazi nahi die Jesusen jarraitzaileei, ezen berek ez dutela bizi behar antzinako tenplu haren nostalgiarik. Jesus da «tenplu berria», agintari erli-

jiosoek jo zuten, baina Aitak «piztu» zuen Jesus hura. Ez da metafora ausart bat. Kristauek Jainkoarekin betiko izan behar duten harremana markatzen du horrek. Jainkoa bizi den tenplu berritzat Jesus hartzen dutenentzat, desberdina da dena. Jainkoarekin topo egiteko, ez da aski tenplura joatea. Premiazkoa da Jesusengana hurbiltzea, haren egitasmoan murgiltzea, haren urratsei jarraitzea, haren espirituaren arabera bizitzea.

Jesus den tenplu berri honetan, Jainkoa adoratzeko, ez da aski intsentsua, ez dira aski gorapenak, ez dira aski liturgia handiosak. Hauek dira benetako adoratzaileak: Jainkoaren aurrean «espirituz eta egiaz bizi direnak». Honetan datza zinezko adorazioa: Jesusen «Espirituz» Ebanjelioaren «Egia» bizitzean. Hori gabe, «adorazio hutsala» dateke kultua.

Jesus den tenplu berri honetako ateak zabalik dira gizon-emakume guztientzat. Inor ez da bazter utzia. Hor sar daitezke bekatariak, kutsatuak eta, are, paganoak. Guztiena da eta guztientzat da Jesusen baitan bizi den Jainkoa. Tenplu honetan ez da inolako bereizketarik. Ez da eremu banatzailerik gizonezkoentzat eta emakumeentzat. Kristogan «ez da jadanik gizonezkorik eta emakumerik». Ez da arraza aukeraturik, ez herri bazter utzirik. Maitasun- eta bizi-premian direnak: horiek dira lehenetsi bakarrak. Jakina, beharrezkoak ditugu tenpluak Jesus Jaun bezala adoratzeko, baina Jesus bera dugu zinezko tenplua.